carta de los derechos sociales euskal herriko eskubide sozialen karta

**Eztabaidarako zirriborroa**

# (01) ESKUBIDE SOZIALEN KARTA

(02) Jendarteko kide gehienok behin eta berriz salatu izan dugu gobernuek guri eragiten diguten gauzei buruz zer nolako erabakiak hartzen dituzten. Baina gainera, ziur gaude bestela joka daitekeela, eta jokatu behar dela. Horregatik, gaurko egoera errotik aldatzeko mugitzen hasi gara.

*(03) Hizkuntza ez da neutrala; euskarak gure herriaren mundu-ikuskera islatzen du, sozialki eraikitzeko bere modua. Latinezko 'Directus' hitzak bi punturen arteko lerrorik laburrena adierazten du; bitartean dagoen guztia zeharkatzen du, zanpatuagatik ere. 'Eskubidea'ren esanahian, berriz, eskuek inguratu egiten dute, erdian dagoena bere baitan hartu, bildu, besarkatzen dutelarik. Avellaneda/Urrestietako Forua (ia mila urteko historiarekin) haratago joan zen: "Zor zaio". Gure herriak ez du bizi duinerako eskubidea; aitzitik, bizimodu duin hori zor zaio. "Herriari duintasuna zor zaio".* Nekane Jurado

(04) Egin dugun lehen urratsa "Euskal Herriko Mugimendu Sozial eta Sindikalen lehen Asanblada" osatzea izan da, "Euskal Herriko Eskubide Sozialen Gutuna" egiteko helburuarekin.

(05) Gutun honek sintesia egin nahi du langile-klasearen eta sektore herritar zabalen (gazte, adineko, emakume, migrante, maila funtzional desberdineko pertsonak...) helburu eta aldarrikapenik sentituenekin, gure eskubideen defentsa eta hedapenean aurrera egite aldera, aurre eginez esplotazio baldintzak areagotzeko indarrean dagoen eraso kapitalistari.

*(06) "Lehen urratsa engainuaren eta distortsioaren lainoan sartzea da eta munduari buruzko egia ikastea, gero antolatu eta borrokan jarduteko. Hori sekula ez da ezinezko izan, ezta erraza ere. Orain ez da ezinezkoa, ezta erraza ere. Historian gutxitan izan da hau bezalako unerik, non hautuak giza-ondorio zeharo dramatikoak eragin baititzake".* Noam Chomsky

(07) Gutuna egiteko modu bakarra parte hartzezko prozesu bat izan daiteke. Kanta herrikoi ezagunak dioen moduan, "hire indarraren beharra dinagu, gure indarrarekin batera". Parte hartzeak bultzatu eta hauspotu egin behar du arlo sozial eta sindikaleko erakunde desberdinok -nor bere esparruan gehiengo handia delarik- egiten ari garen ahaleginak koordinatu eta bateratzeko prozesua; azken xedea litzateke eredu sozioekonomiko berri baten oinarriak ezartzea, guztioi bermatzeko Euskal Herriko baliabideetan eta sortzen den aberastasunean parte izateko bidezko aukera.

## (08) Nola ekarri gaituzte hondamendi honetara?

***(09) "Gure garaiko arazoa da honez gero etorkizuna ez dela izan ohi zena"* Paul Valérl**

(10) Krisi sistemiko eta global bat bizi dugu, zeinak aldi berean esparru anitzetan eragina duen: politika, ekonomia, produkzio modua, arlo soziala, ekologia, zaintza, bizikidetza eta balioak. Galeanok esan zuenez, *"mundua unibertsoan jiraka dabilen paradoxa bat dugu. Horrela jarraitzekotan, laster planetaren jabeek gosea eta egarria debekatuko dituzte, ogia eta ura falta ez daitezen".*

(11) Gaur egun bankuetan eta finantza-sisteman kontzentratuta dagoen botere ekonomikoak hartzen ditu politika publikoei buruzko erabakiak. Berarekin askatasun eta eskubideak desagertzen dira -alegia, benetako sistema demokratiko baten oinarria-, baita herrien burujabetza ere, eta hein berean finantza munduko lobby-en eta enpresa handien boterea areagotzen da. Ekonomia, gobernu neoliberalei esker, bankari eta espekulatzaileen minoriaren interesen mesedetan dago; honek areagotu egiten du aberastasunaren banaketa injustua, diskriminazioen iraupena, pobreziaren feminizazio eta infantilizazioa, naturaren suntsipena eta ondasun komunen desagerpena.

(12) Giza-eskubideei, eskubide politiko, kultural, zibil, ekonomiko eta sozialei buruzko nazioarteko adierazpen eta gutunak baliorik gabe geratzen ari dira, hain latza baita gobernuen ekinaldia: erreforma eta murrizketekin gure eskubideak salgai huts bihurtu nahi dituzte.

- (13) **Eskubide sozialak** (osasuna, etxebizitza, hezkuntza...), herri-administrazioei exiji dakizkiekeen eskubide gisa, ordenamendu juridikotik kentzen ari dira. Lehentasuna bankuen negozioa salbatzea da eta zor finantzieroa ordaintzea; aldiz, bigarren mailara pasatako beharrizan sozialak aurrekontuek ahalbidetzen duen heinean asetzen dira.

- (14) **Zerbitzu publikoek** beren jite unibertsala galtzen dute. Pribatizatu egiten dituzte, gutxi batzuk negozioa egiteko aukera izan dezaten. Zerbitzuen berrordainketa ezartzen da kontu publiko murriztuak orekatzeko, herritarren beharrizanen lepotik.

- (15) **Lanerako eta prestazio sozial** duinak izateko eskubidea, pertsonei bizi-baldintza egokiak bermatzeko, baztertu egiten da akziodunen dibidendoak puztearren. Soldata jaitsierak, lan-baldintzak okertzea, langabezia masiboa, prekarietatea eta bazterketa erabiltzen dira lan-kostuak zeharo jaisteko; ustez erabat desagertuta zeuden ia-esklabutasun harremanak berpizten ari dira.

- (16) **Zaintza lana**ren izaera baztertzaile eta diskriminatzailea areagotzen ari da jendarte matxista eta heteropatriarkal honetan; lan horri balioa kendu, ikusezin bihurtzen du eta esparru pribatura makurrarazten du, pertsonen ongizatearen kaltetan. Gainera, emakumeak pairatzen duen zapalkuntza larriagotzen ari da: eskubide sexual eta erreproduktiboen ukapena, soldata desberdintasunaren eta prekarietate laboralaren hazkundea, bortizkeria matxistaren eta bere ukazioaren hedapena...

**(17) Euskal Herriko gobernu neoliberalak, estrategia honen lankide.**

> *(18) Sistema neoliberalaren kudeatzaileek eta "itxura zientifikoa" ematen dioten intelektualek duela lau hamarkada heriotza zigorra ezarri zieten ideologiei, eta XX. mendea amaitzear zelarik historiaren amaiera ebatzi zuten. (...) Helburua engainatzea eta nahastea da, hain zuzen historia geldiarazteko asmoz, historia jendartea eraldatzeko, mundua aldatzeko herriek daramaten borroka den aldetik bederen. Funtsean, trikimailu teoriko horiek krisian dagoen eta gainbehera doan sistema politiko-ekonomiko baten jarrera defentsiboa islatzen dute.* Ricardo Alarcón.

(19) Euskal Herriko gobernu neoliberalek beren esparruan politikoa horietxek ezarri dituzte, eta estatu espainiar zein frantsesaren eta Europar Batasun guztiaren estrategia berean parte hartzen dute, urte askotako borroka anitzetan erdietsitako lorpen sozialak deuseztatzeko xedez. Ezin dute euren ardura saihestu esanez beste batzuk hartutako erabakiak direla. Eurak dira erabaki dituzten edota honez gero ezarri diren politiken arduradun. Baina artean, Rosa Luxemburgek esan zuen legez, *"klase burgesen justizia berriro sare baten modukoa izan zen, zeinak marrazo aseezinei ihes egiten utzi eta sardina txikiak harrapatu baitzituen".*

(20) Botere politiko eta instituzionalak erabaki du eskubideak murriztea dela euskal jendarteari bere etorkizuna erabakitzeko gaitasuna kentzeko modua. Zerga- eta aurrekontu-politika guztiz injustuek ekarri duten krisiaren areagotzea baliatzen ari dira euskal langileen eta jendarte osoaren aurka inoiz ikusi gabeko erasoa jotzeko.

(21) Euskal Herriak ezin du jarraitu gure erabakitzeko eskubidea baldintzatzen eta mugatzen duten politikak jasaten; dekretuz-dekretu taxututako politika hauek honako ondorioak dituzte: desberdintasuna, langabezia, pobretzea, pribatizazioak, gazteentzako etorkizunik eza, genero-diskriminazioa, ingurumenaren heriotza, arrazismoa eta zerbitzu publikoen suntsipena; hori guztia, ahaztuz herriak ez direla legeentzat sortu, legeak herrientzat baizik.

**(22) Mugimendu sozio-sindikala aitzindari**

> *(23) "Denborak ihes egiten du, uharrak bidaia egiten du, ibaiko urak bere bidetik jarraitzen du. Nere herria, bere jatorriaz geroztik, ibai handi bat bezalakoa izan zen, zerupean lurreko emankortasunaren altxorrak sortzen dituena."* Agosti Xaho

(24) Larrialdi sozial eta nazionaleko egoeran gaude. Horregatik, Eskubide Sozialen Gutun bat hitzartzeko ardura hartu dugu geure gain, oinarrizko eskubide ekonomiko sozialak bermatu eta, horrenbestez, euskal jendarteko kide guztiek bizi-baldintza duinak iritsi eta beren erabakiak har ditzaten.

(25) Kapitalaren oldarraldi neoliberala medio iritsi da Euskal Herriko emakume eta gizonezkook, eskubide eta betebehar berdinak ditugula, beste proiektu ekonomiko eta sozial bat eraikitzeko garaia. Iritsi da erabateko askatasunez hautatzen dugun sistema geure buruari emateko garaia, gure baliabide natural, ekonomiko, sozial zein kulturalen gaineko kontrola bermatzeko eta gure beharrizanen baitan egokien diren erabaki politikoak hartzeko.

(26) Jendarte eta bizitzaren zaintza eredu berri bat behar dugu: jarduera ekonomikoaren erdigunean pertsonak kokatu behar dira, eta lehentasuna eman behar zaio jendartearen interes kolektiboari, ez interes partikularrei eta merkatuaren logikari. Hots, finean egungo metatze kapitalista beste produkzio, banaketa, kontsumo eta zaintza eredu bat bihurtu behar dugu, gure beharrizanak asetzeko, betiere aintzat hartuta ezin duela ondoko belaunaldien edota planetaren erregenerazio ahalmenaren kaltetan izan. Beharrezko balitz, Rosa Parksen jarrera hartzeko garaia genuke; emakume hark ezetz esan eta historia aldatu zuen: arbuiatu injustu edo onartu ezineko irizten diegun lege edota arau horiek.

(27) Gaurko egoerari aurre egiteko prest gaude, eta erakundeei galdegiten diegu jar daitezela

Euskal Herriaren borondatearen, berton bizi direnen esanetara, bere etorkizun politiko, instituzional, ekonomikoa eta bizikidetza eredua erabakitzeko.

(28) Iritsi da euskal jendarteak komunitate bidezko, anitz, inklusibo eta solidario bat eraikitzeko garaia, bere borondatean oinarrituta, beste inposiziorik eta kanpoko eskuhartzerik gabe. Ibiltzeko eta bidea egiteko garaia dugu. Horregatik proposatzen dugu Euskal Herriko Eskubide Sozialen Gutun hau, datorren ataleko printzipioen arabera.

## (29) EUSKAL HERRIKO ESKUBIDE SOZIALEN KARTA: OINARRIAK

**(30) Parte hartze sozial aktiboa.**

*(31) "Asanblada Nazionala antzerki burges bihurtzen denean, eskenatoki guztiak asanblada nazional bilakatu behar dira" 68ko maiatza.*

(32) Karta hau prozesu parte hartzaile baten emaitza da, pertsonen parte hartzean oinarritu dena. Mugimendu sozialek zein antolakunde sindikalek sustatu dute, eta finean, prozesuan zehar parte hartu duen pertsona orok egiten du. Hemen jasotakoak herriaren eskariak dira, kapitalaren aginduari aurre egin nahian.

**(33) Mobilizazio soziala ardatz duen prozesu iraunkorra.**

*(34) "Kalera, kalera, borrokalari kalera!..." Euskal kantu herrikoia*

(35) Parte hartze sozialaren bidez, Karta elaboratu ez ezik, sentsibilizaziorako pautak zehaztu eta gure aldarrikapenak finkatzeko unean jarraitu beharreko bideak ere marraztuko ditugu. Soilik mobilizazio sozialak eta indarren batuketak ahalbidetuko digute inposatutako eraso iraunkorrak geldiarazi eta marraztutako bidean aurrera egiten.

**(36) Justizia, elkartasuna eta unibertsaltasuna. Eskubide sozialen, ekonomikoen, berdintasunezkoen, linguistikoen, kulturalen eta demokrazia parte hartzailearen aitortza.**

*(37) "Batek goserikan diraueino ez gara gu asetuko, beste bat loturik deino ez gara libre izango" Joxe Antonio Artze*

(38) Gure justiziarako eta elkartasunerako eskaera ez da erretorika kontua. Karta honetan jasotako eskubide ororen aitortza exijitzen dugu. Karta honetako edukien ezarpenak Euskal Herrian bizi garen herritarron bizi baldintzen hobekuntza nabarmena suposatuko du.

(39) Eskuartean dugun Kartan aitortzen diren eskubide sozialak unibertsaltasunaren printzipiotik abiatzen dira, eta ondorioz, hauen ezarpen inklusibotik ere, inolako bereizketarik nahiz diskriminaziorik egin gabe, dela genero arrazoiengatik, edota arrazoi laboral, aniztasun sexual, aniztasun funtzional, osasun, azal kolore, jatorri eta ideologia politiko zein erlijiosoengatik ere.

(40) Karta hau sortzen da emakume-gizon eskubide berdintasun aldarritik.

**(41) Naturaren mugak errespetatu: Bestelako produkzio eta kontsumo eredu bat.**

*(42) "Kontsumoak kontsumitzen gaitu"*

(43) Mugatua den ekosistema batean bizi gara, zeinak ez dituen materialak infinituki erreproduzitzen ez eta hondakinak infinituki xurgatzen ere. Energia eta lehengai berriztagarri nahiz ez-berriztagarrien neurrigabeko kontsumoak, bereziki aberasturiko herrialdeetan, baliabideen agortzean eta aldaketa klimatikoan aktiboki kolaboratzen du etorkizun ez oso urrunean tragikoak izan daitezkeen ondorioak eraginez. Bestelako produkzio eta kontsumo eredu bat inposatzen da.

**(44) Bizitza erdigunean: Iraunkortasun orekatua lehenetsi.**

*(45) "Egungo Krisiak agerian uzten du bizigarriak diren bizitzak sortzeko sistema honek duen ezintasuna" Amaia Orozco*

(46) Defendatzen dugun eredu sozialak bizitzaren mantentzea lehenesten du: pertsonen zaintza

zein gure lurraren zaintza. Balio hauek ez errespetatzeak etorkizunik ez izatera garamatza, ez pertsona bezala ez eta herri bezala ere. Ezinbestekoa da bizitzaren oreka eratzen eta mantentzen duten sozialki beharrezkoak diren lan guzti horiek aitortzea.

(47) Bermatu ondorengo belaunaldiei biziraupenerako beharrezko diren oinarrizko baliabideak eredu sozio-produktibo autozentratu baten bitartez: gure natur baliabideak kontserbatzen/iraunarazten direna, ez-xahutzailea, kontsumo arduratsuan oinarriturikoa, birziklapenean, berrerabilpenean eta aztarna ekologikoaren gutxitzean.

(48) Aldi berean, bakean bizitzeko eskubidea ere badugu hortaz militarismoak ez du kabidarik.

**(49) Pertsonak merkatuaren gainetik. Ekonomia jendartearen zerbitzura**

*(50) "Hainbat gorputz hilarazi dituen diruak, hamaika arima hiltzen ditu egunero" Giovanni Papini*

(51) Ekinbide politiko, ekonomiko eta instituzionalaren lehentasunak aldatu behar dira, pertsonak eta euren interesak merkatuaren alboan lehenetsiz, eta lanerako eskubidea (produktiboa eta erreproduktiboa) kapitalaren interesen alboan. Edozein aktibitate ekonomikoren azken xedea ezin da aberaste partikularra izan pobretze orokorraren kontura. Horretarako, ziurtatu behar da gobernuaren ekinbidearen lehentasuna direla politika ekonomikoaren efizientzia soziala eta oinarrizko eskubide sozialen bermea.

**(52) Aberastasunaren bidezko banaketa.**

*(53) "Zertan erabil dezakete askatasun politikoa ogirik ez duten horiek? Orduan, soilik teorizatzaileentzat eta handi-mandiak diren politikarientzat da baliagarria" Jean Paul Marat*

(54) Demokrazian bizitzea xede duen edozein jendartek bere lanaren bidez produzitzen duen aberastasunaren banaketa justua bermatu behar du. Kapitalaren kontzentrazioa eta metaketa, izugarria dena eta gero eta poltsiko gutxiagotan haziz doana, geroz eta sektore gehiago pobretzeko baliatzen ari den krisi ekonomikoaren kausa eta ondorioa da.

(55) Euskal Herriko pobreziaren muga determinatuko duen akordio soziala, zeinaren mugaren azpian ez duen diru-sarrerarik izango inork (aktibo nahiz ez aktibo deiturikoa izan).

(56) Ezinbestekoa da politika fiskalean sakoneko aldaketa ematea; sistema fiskal justoa izateko bere bilketa gaitasuna nabarmen hobetuz, beharrezko diren premia sozialen koberturari aurre egiteko.

**(57) Enplegu duina. Lanen bidezko banaketa.**

*(58) "Industrializazioak II. Mundu Gerraren ostean deuseztatu zuen morroi-klase bat berpizten da" Andre Gorz*

*(59) "[Emakumeok] esklaboen esklaboak gara. Gizonak baino era ankerragoan esplotatzen gaituzte" Lucy González*

(60) Enplegu duinaren defentsan dihardugu, herritarren gehiengoari ezarri nahi dioten prekarietatea ukatuz.

(61) Karta hau sozialki beharrezkoak diren lan guztien bisualizatzeko beharretik ere abiatzen da (bai ordainpeko enplegua, bai zaintza eta etxeko lanak, etab.), lanok duten balioa eta aitortza emanaz eta hauek era justu batean banatuz.

**(62) Kolektiboa denari balioa eman.**

*(63) "Profezia guztiek diote gizakiak berak bere buruaren suntsiketa eragingo duela. Baina mendeek eta etengabe berritzen den biziak, maitaleen eta ameslarien belaunaldi bat sortu zuten ere. Munduaren suntsiketarekin amesten ez duten gizon eta emakumeak dira, tximeleten eta urretxindorren mundua sortzea amesten dutenak baizik" Gioconda Belli*

(64) Eskubide Sozialen Karta, sistemari aurre egin eta berri bateranzko eraikuntza bidean, erronka kolektiboan oinarritzen da. Indibidualismoa hedatzea helburu duen ideologiak ondo asko daki gure indarrak gure arteko batasunean datzala eta indar hauek batuketa horretan biderkatu egiten direla, kolektiboa delarik sistemari aurre egiteko bide bakarra.

(65) Publikoa denaren defentsa eta bere hobekuntzaren alde egiten dugu pribatua denaren alboan.

(66) Horrez gain, taldeen zein pertsonen arteko sareak sustatzearen beharra aldarrikatzen dugu elkar ezagutu eta ezartzen ari zaizkigun politiken aurrean erantzun irmo bat emate aldera.

**(67) Pertsonen eta herrien arteko elkartasuna.**

*(68) "Karitatea umiliagarria da bertikalki eta goitik egiten delako; elkartasuna horizontala eta elkarrekiko errespetua dakar berarekin" Eduardo Galeano*

*(69) "Hemengo irrintzi askeak han oihartzun" Esaera zaharra*

(70) Aztarna ekologikoa da elkartasun ezaren neurtzaile argiena. Euskal Herriak bere aztarna txikitu beharra du bestelako produkzio eta kontsumo eredu arduratsu batean oinarrituta, baita iraunkortasunean zein burujabetzan oinarrituriko nekazal eta elikadura politikak aurrera eramanaz.

(71) Eskubide hauek gure esparru nazionalean bermatzetik abiatzen dira. Euskal Herriak herrien arteko elkartasunaren garapenean aktiboki lagundu behar du, baita nazioarteko lankidetzan, eta finean, justizian, parekidetasunean, askatasunean eta elkartasunean oinarrituriko harreman eredu berriak sortzen ere.

**(72) Euskal Herria da euskal herritarren eskubideak bermatzeko subjektu burujabea.**

(73) Euskal Herriari, beste edozein herri eta naziori bezala, bere eredu ekonomiko, sozial, politiko eta instituzional propioaren gainean erabakitzeko eskubidea dagokio, muga bakarra izanik euskal herritarrek (ulertuta bizi proiektua bertan garatzen duten pertsonen multzoa, zeinahi izanik ere beraien jatorria) demokratikoki adierazitako borondatea bera.

**(74) Euskal Herriko instituzioek honen arabera jardun behar dute.**

*(75) "Herriak agindu, gobernuak bete" Marcos komandante ordea. EZLN*

*(76) "Bakea ez da soilik gerrarik ez egotea. Pobrezia, arrazakeria, diskriminazioa eta bazterkeria dauden heinean, nekez esan dezakegu mundua bakean denik" Rigoberta Menchú*

(77) Instituzioei exijitzen diegu euren gain har dezaten herritarrenganako duten ardura, baita beharrezko den neurri oro hartzea oinarrizko eskubide sozialen jabe izan daitezen bermatzeko ere.

(78) Euskal Herriak demokrazia parte hartzailean oinarrituriko eredu politiko baten beharra du, herritarrak antolatzera eta erabaki politikoetan aktiboki parte hartzera bultzatuko dituena.

(79) Instituzioek helburu hau euren jardun politikoaren erdigunean jarri behar dute, eragotziz euskal gehiengoengandik at hartzen diren erabakiak inposa ditzaten dekretu, lege erreforma edo beste era bateko aktuazioen bidez. Egun, eurei ere badagokie oihukatzea botere ekonomikoari “Ez dira pasako” eta horren arabera jardun behar dute.

**3. eta 4.puntuak: ESKUBIDEAK ETA TRESNAK**

## 1. LURRALDE ETA INGURUMEN ESKUBIDEAK

### 1.1. LURRALDEAREN BERRANTOLAKETA SOZIALA

**Kontzeptu klabeak:** lurraldea – eskualdeen arteko oreka, deszentralizazioa, dibertsifikazioa, garraioa, azpiegiturak...

**Eskubideak:**

- Lurraldearen gaineko ekintza orok ekosistemekiko errespetua eta oreka bermatu behar dute.
- Herritarren parte hartzearekin egingo dira Hiri eta herrien urbanismo antolakuntza eta espazio publikoen erabilera
- Garraio publikoa guztiontzat.
- Azpiegiturak herritarren beharrei begira antolatu eta proposatzea, ez aberasteko.

**Tresnak:** legedi propioa, garraio eredu iraunkorra, azpiegituren berrerabilpena, alferrikako azpiegituren etetea (TAV, autopistak...)

**GALDERA:** Lurraldearen zati handi bat hustu zein basamortu bihurtzen ari den bitartean, zergatik bizi da hiri-aglomerazioetan (hiriburuak, herri handiak) Euskal Herriko biztanleriaren erdia edo gehiago?

### 1.2. INGURUMEN ESKUBIDEAK

**Kontzeptu klabeak:** aztarna ekologikoa, kutsadura, garraio zein kontsumo moduak...

**Eskubideak:**

- Ingurugiroa babestea, mantentzea eta berreskuratzea, egungo zein etorkizuneko belaunaldien mesedetan.

- Ingurugiro osasuntsuan bizitzeko eskubidea, xahukeria, kutsadura, pribatizazioa eta espekulazioa baztertuz.
- Kontsumo arduratsua
- Energia berriztagarriekiko konpromisoa
- Ekoizpen eredua planifikatzeko eskubidea

**Tresnak:** berrerabili – birziklatu – murriztu, ekintza kutsakorrak ordezkatu, Ingurugiro Behatokia...

**GALDERA:** Zeintzuk dira gertuko ingurugiroan sortzen ditugun kalte bortitz edo adierazgarrienak? Zer aldatu beharko genuke ingurunearekiko dugun harremanean?

1.3. ELIKADURA BURUJABETZA

**Kontzeptu klabeak:** planifikazioa, kaladeroak, belaunaldi aldaketa, elikagaien ibilbidea, kalitatea, gertutasuna...

**Eskubideak:**

- Elikatze eskubidea, bizitzeko oinarrizko eskubide gisa aitortua izatea.
- Kalitatezko elikagaiak izateko/edukitzeko eskubidea.
- Gure herriko nekazal eta arrantza politikak erabakitzeko eskubidea.

**Tresnak:** politika propioak, kontsumo zirkuito zuzenak produkzioaren eta erabiltzaileen artean...

**GALDERA:** zer iruditzen zaizu Euskal Herrian kontsumitzen denaren %4a bakarrik dela bertako produkzioak emana? Nola konponduko zenuke hau?

## 2. LANARI LOTURIKO ESKUBIDEAK

### 2.1. LANAREN BANAKETA

**Kontzeptu klabeak:** aitortza, lan produktibo-erreproduktiboa, erantzukizun partekatua, aukera berdinatsuna…

**Eskubideak:**

- Gizon eta emakumeen arteko parekidetasuna.
- Lan erreproduktiboa, balio erantsia duen eta aberastasuna zein ongizate soziala sortzen duen jarduera ekonomiko zein sozial gisa aitortua izatea…

**Tresnak**: kontzientziazioa eta heziketan eragitera (hezkidetza, rol tailerrak...); sexuaren araberako lan banaketa gainditzeko bermeak; diru-sarrera minimo duinak bermatzea ; BPGren baitan lan erreproduktiboa kontabilizatzea…

**GALDERA:** Zer esan nahi du lan erreproduktiboa aitortzea? Oztoporik ba al dago erantzukizun partekatua praktikan jartzeko? Zeintzuk?

### 2.2. ENPLEGU DUIN ETA KALITATEZKOA EDUKITZEKO ESKUBIDEA

**Kontzeptu klabeak:** kalitatezko enplegua, askatasun sindikala, enpleguaren banaketa, etxekolanak...

**Eskubideak:**

- Lanerako eskubidea bermatu (enpleguaren banaketa, lanaldiaren murrizketa...)

- Pertsona orok kalitatezko enplegua, lan-egonkortasuna eta ordainsari justua edukitzeko eskubidea.
- Lortutako eskubideen atzeraezintasuna aitortzea.
- Negoziazio kolektiborako eskubidea. Langile bakar bat ere ez, lan hitzarmenik gabe.

**Tresnak**: Lan Kodea, Lan Harremanetarako Euskal Esparrua, politika propioak...

**Galdera:** zer egin daiteke lana banatu eta jendarte justua lortzeko?

**3. ESKUBIDE EKONOMIKOAK**

3.1. POLITIKA FISKALA

**Kontzeptu klabeak:** progresibotasuna, iruzur fiskalaren kontrako borroka....

**Eskubideak:**

- Politika fiskal justua. Azken urteetan errenta altuei eta kapitalari ezarritako zerga-deskontuetan atzera egitea, ez aplikatzea (IRPF, Sozietateen gaineko Zerga, Ondarea...)
- Iruzurraren kontra borrokatu. Bost urteko epean, lanetik eratortzen ez diren errentak ikuskatzea.
- Jatorria kontutan hartu gabe, zerga-ordainketa berdina errenta eta ondare guztietarako.

**Tresnak:** politika fiskalean goitik beherako aldaketa, zerga – gaietan erabateko ahalmena eskuratzea.

**Galdera:** politika fiskal justua lortzeko, zein neurri bultzatu beharko lirateke?

3.2. FINANTZA SISTEMA

**Kontzeptu klabeak**: finantza sistema, espekulazioa gelditu, jendarteari bideraturiko zerbitzua...

**Eskubideak:**

- Jendartearen zein euskal ekonomiaren beharren arabera kreditua esleituko duen sistema publikoa sortzeko eskubidea.
- Aurrezki Kutxen bankarizazioan eta pribatizazioan atzera egitea.
- Espekulazioa debekatzea.

**Tresnak:** Jendartearen zerbitzura egongo den finantza sistema, finantza sistema ordenatzeko erabakitzeko gaitasuna eskuratzea...

**GALDERA**: Finantza sistema publiko edo pribatua? Banka edo bestelako eredua? Nola bermatu diruaren kontrol publikoa?

3.3 PRESTAZIO SOZIALAK

**Kontzeptu klabeak:** pentsioak, langabezia prestazioak, oinarrizko errenta, larrialdi sozialeko laguntzak...

**Eskubideak**:

- Pertsona guztiei bizitza duina izateko eskubidea bermatuko dien prestazio sozialak ziurtatzea.
- Prestazio sozialak (pentsioak, langabezia-prestazioak...) murriztu dituzten legeak ez aplikatzea
- Prestazio sozialen eroste-ahalmena bermatu.
- Pentsioen esparruan, (Madrilen) onartu diren murrizketak konpentsatzeko osagarri bat ezartzea Euskal Herriko instituzioek.

**Tresnak:** prestazio sozial guztiak xedatzeko ahalmen legegilea, prestazio sozialei buruzko politikan erabateko aldaketa...

**GALDERA:** Euskal Herriko instituzioek ze funtzio bete behar dute prestazioak ezartzerako garaiak?

3.4. AURREKONTUAK:

**Kontzeptu klabeak**: behar sozialak, xahuketa, korrupzioa, parte hartzea...

**Eskubideak:**

- Euskal Herriko instituzioen burujabetza, gastuaren kudeaketan.
- Behar sozialak aurrekontuetan lehenetsiko dituen lege baten osaketa.

**Tresnak**: aurrekontuen (orokorra eta departamenduka egiten dena) lanketa zein kontrolean eragile sozialen parte hartze iraunkorra bermatzea...

**GALDERA:** Behar sozialek zein pisu eduki behar dute aurrekontuetako gastuaren atalean? Nola lortu dezakegu pisu espezifiko hori edukitzea?

## 4. ESKUBIDE SOZIALAK

### 4.1. OSASUNA

**Kontzeptu klabeak**: Osasunaren xedapenak, unibertsaltasuna, doako erabilera, prebentzioa, bizitzaren medikalizazioa galdu,...

**Eskubideak:**

- Aho eta hortzen arreta osoa eta doakoa.
- Osasun mentaren esparruan, baliabideen areagotzea.
- Zahartze Saila sortu adinduei dagozkien gaiak ikertu eta arreta emateko.
- Itxaron-zerrendak murriztu.
- Osasunari buruzko azterketetan genero aldagaia txertatu.

**Tresnak**: BPG-aren araberako aurrekontuak handitu osasunean; emakumeen premiei egokitutako baliabide eta azpiegituretan inbertitu; osasun batzordeak eskuduntza-betearazleez hornitu, Mutualitateak osasun sistema publikoan sartu,...

**GALDERA:** Zer oinarrizko ezaugarriak bete beharko lituzke osasun-sistemak? Zer eragozpen daude sistema hori gauzatu dadin?

### 4.2. HEZKUNTZA

**Kontzeptu klabeak:** hezkidetza, unibertsaltasuna, publikoa/pribatua, laikotasuna,...

**Eskubideak:**

- Ikasle guztiei bermatu behar zaie euskararen ezagutza (ikasi) eta euskara eta euskaraz mintzatu ahal izana, gure herriaren hizkuntza delako.
- Gizartearen kohesioa bermatuko duen hezkuntza sistema publikoa.

- Sexuaren araberako desberdintasunak zein biolentzia eragiten duen eredu heteropatriarkala aldatzeko, hezkuntza sistema hezkidetzaile eta laikoa tresna gisa baliatu.

- Hizkuntza zonifikazioaren bukaera Nafarroan

**Tresnak**: Indarrean dagoen hizkuntza ereduen sistema gainditu, ikasle ororen euskalduntzea bermatzeko. Irakasleen etengabeko prestakuntza eta hezkidetza lantzeko baliabideen hornikuntza. Eliza Katolikoaren pribilegioak, Vaticanoarekin sinaturiko Konkordatutik eratorritakoak, ezabatu

**GALDERA:** Hezkuntza Sistema propio batek, ze ezaugarri izan beharko lituzke? Nola sustatu sistema publikoa, euskalduna, hezkidetzaile, inklusiboa eta laikoa?

| |
|---|
| |

4.3. ETXEBIZITZA

**Kontzeptu klabeak:** Alokairu sozialeko etxebizitza publikoa/pribatua, baztertuak izateko arriskuan dauden kolektiboak, erabilera kooperatibak, bioeraikuntza,...

**Eskubideak:**

- Etxebizitza eskuratzeko legezko eskubidea.

- Banku pribatuen parke inmobiliarioa jabetza publikoan jartzea, honen erabilera soziala bultzatzeko.

- Alokairuen prezioak ez dezala familia-unitateak dituen diru-sarreren %15a gainditu...

**Tresnak**: Alokairu sozialera bideratutako etxebizitzen parke-publikoa sortu; berau kudeatzeko, erakunde publiko parte hartzailea sortu; hutsik dauden etxebizitzei ezarritako zerga orokortu,...

**GALDERA:** Etxegabetzeen aurrean, “etxea ordainean ematea” da aldarrikatzen dena, baina zein neurritan bermatzen da etxebizitza edukitzeko eskubidea?

| |
|---|
| |

## 5. BIZITZAREN MANTENTZEA

**Kontzeptu klabeak:** interdependentzia soziala vs autonomo-mendeko ideia; bizitzaren zaintza eta sostengua; familia eredu nuklear eta heterosexuala.

**Eskubideak:**

- Mendekotasun egoeran diren pertsonak kalitatezko sistema publikoaren bitartez zainduak izateko eskubidea, inongo motako diskriminaziorik egin gabe.
- Bizitzaren eta osasunaren mantentzerako egunerokotasunean oinarrizkoak diren lanen bisibilizazioa, aitortza eta banaketa justua.
- Eskubidea zainduak izateko eta emakume izateagatik etxeko eta zaintza lanak egitera behartuak ez izateko.

**Tresnak**: pertsonen garapen integralerako, hezkidetzan oinarritutako hezkuntza eredua; Mendekotasun egoeran diren pertsonen zaintza aurrera eraman ahal izateko eszedentzia ordaindu edota prestazio ekonomikoetarako aurrekontu publikoa.

**GALDERA**: Zein dira bizitza bizigarriak eraikitzeko oinarriak? Nola bermatuko ditugu bizitzaren sostengurako oinarri eta baldintzok?

## 6. PARTE HARTZEA

**Kontzeptu klabeak:** demokrazia parte hartzailea vs demokrazia ordezkatzailea, kontsulta lotesleak.

**Eskubideak:**

- Zenbait erabaki (gai eztabaidagarriak, polemikoak...) herriaren berrespen lotesleaz har daitezen eskubidea.
- Erakunde sozialek, instituzioekin batera, politika publikoak diseinatzeko eskubidea.

- Lege anakronikoak edota herriaren nahiarekin bat ez datozen legeak baliogabetzeko kontsultak deitzeko eskubidea.

**Tresnak**: Erakundeen, gizarte-erakundeen eta norbanakoen arteko harremana erraztuko dituzten plataforma iraunkorrak; kontsultak, erreferenduma; gizarte-partaidetzak gidaturiko hedabide sistema publikoa.

**GALDERA**: Nahikoa da lau urtean behin bozkatzea herriaren borondatea azaldu eta bermatzeko? Nola bermatzen da herritarren borondatea?

## 7. INDARKERIA GABEKO BIZIMODU ASKE BAT EMAKUMEENTZAT

**Kontzeptu klabeak**: Emakumeen aurkako askotariko indarkeriak, Sistema Heteropatriarkala (matxismoa), botere harremanak, lan produktibo/erreproduktiboa

**Eskubideak:**

- Emakume izateagatik gure aurkako indarkeriarik ez jasateko eskubidea.
- Eskubidea, emakumeok gure bizitza proiektua askatasunean eta aukera berdintasunean egiteko, eten eta oztopatua izan gabe edo familia eta familia unitateen eskubideei lotuta izan gabe.
- Gure gorputzen eta bizitzen gainean libreki erabakitzeko eskubidea.

**Tresnak:** Heziketa ez sexista eta Autodefentsa feminista; Emakumeei bizi duin bat bermatzeko baliabide ekonomiko eta soziokulturalak; Bizitza familiarra eta laborala kontziliatzeko politikak; Kontzientziazio feminista norbanakoan zein maila kolektiboan lantzen dituzten taldeak sustatu.

**GALDERA:** Zein paper jokatzen du jendarteak indarkeria matxistaren iraunaraztean? Berdintasunaren aro honetan bizi garelarik, zergatik gaude emakumeok indarkeriaren jo-puntuan?

## 8. JATORRI ANIZTASUNA

**Kontzeptu klabeak:** herritartasun inklusiboa, arrazakeria/xenofobia, identitate anizkoitzak,..

**Eskubideak:**

- Pertsona ororentzat eskubide berdintasuna.
- Pertsonen joan-etorri askerako eskubidea.
- Arrazakeria eta xenofobiako adierazpen oro deuseztatu.

**Tresnak**: Jendarte gisa, aniztasuna kudeatzeko eraiki nahi dugun ereduari buruzko kultur-arteko eztabaidak; aniztasun sozio-kulturala aintzat hartuko dituen gune eta elkarrekiko jarduerak sortu; kanpainak sustatu, adibidez: "Eskubideak izateko eskubidea dagokit".

**GALDERA:** Zer egin jatorriko aniztasunarekin?

## 9. ESKUBIDE KULTURALAK

**Kontzeptu klabeak:** Kultura askea, partaidetzan oinarritutako kudeaketa, gune berriak, kultura(k).

**Eskubideak**

- Kultura sortzeko guneak eta oinarrizko baliabideak izateko eskubidea.
- Liburutegien sare publikoa osatzen duten instalazio eta zerbitzuen hobekuntza.
- Sektore estrategikoei ematen zaizkien laguntzak mantentzea.

**Tresnak**: Administrazioetan Kultura Kontseilu parte hartzaileak ezarri; herri-kulturaren, folklorearen eta festaren Institutua sortu; tokian tokiko egitasmo estrategikoak sustatu; euskararen lege berria Nafarroan,...

**GALDERA**: Zein izan behar du administrazioaren zeregina Rock-ean, jota navarran, Edurne Zuri filmean, bertsolaritzan, Gugenheimen,...?

## 10. ANIZTASUN FUNTZIONALA

**Kontzeptu klabeak**: autonomia, interdependentzia, aukera berdintasuna, inklusibitatea

**Eskubideak:**

- Ingurune inklusiboan bizitzeko eskubidea
- Autonomia sustatzeko beharrezko laguntza guztiak jasotzeko eskubidea
- Eskubide berberak guztiontzat

**Tresnak**: eskubide berdintasuna ziurtatzeko bermeak, diskriminazioekin amaitzeko lege babesa, enplegu babestua

**GALDERA**: menpekotasuna eta balioen dikotomia gainditzea posiblea da? Zer egin eguneroko esparruak inklusiboak izateko?

## 11. HIZKUNTZA ESKUBIDEAK

**Kontzeptu klabeak:** ofizialtasuna, aitortza- bermea -erreparazioa, eleaniztasuna/elebitasuna, hizkuntza gatazka.

**Eskubideak:**

- Euskaraz bizitzeko eskubidea: ezagutzaren unibertsalizazioa eta erabilpen-aukeren bermea.
- Euskaldunon hizkuntza eskubideen aitortza, errespetua eta erreparazioa.

- Euskal Herrian elkarbizitzen diren hizkuntzen arteko errespetua.

**Tresnak**: Ofizialtasuna lurralde osoan; Euskal Herri osorako Hizkuntza Politika berri eta egingarria, euskararen ezagutza bermatzen duen eredua, ikas-maila guztietan; Euskalduntze plangintza eraginkorrak eremu publiko (zerbitzu publikoak) zein pribatuan (lan mundua);...

**GALDERA:** kapitalari alternatiba gisa aurkezten den eredu berriak euskara barnebiltzen ez badu, eredu aldaketa izango da? Non daude gako nagusiak?

| |
|---|
| |

## 12. ANIZTASUN SEXUALA

**Kontzeptu klabeak:** Sexu aukera/joera, transgeneroa, despatologizazioa,...

**Eskubideak:**

- Sexualtasun anitzeranzko bidea egin: esteoreotipo, konparazio eta inposaketarik gabea,
- Lan-merkatuan, kirolean eta aisialdi guneetan sartzeko eskubidea bermatu, non ez den sexuizaerako edo genero nortasuneko bazterketarik egingo.
- Trantsexualitatearen despatologizazioa eta hauek psikiatria-gidaliburuetatik desager daitezela eskatu.

**Tresnak**: Genero-identitate Legea aldatu behar da (martxoaren 15eko 3/2007); jaioberriaren sexua zein den erregistratzeko derrigorrezkotasuna kendu; sexu-aukera eta genero identitate ezberdinen irudi duina sustatu hedabideetan.

**GALDERA**: Nola eraitsi sexualitateari eta sexu-jarduerei buruzko mitoak? Zer egin sexu aniztasuna ikustarazteko eta normaltzeko?

| |
|---|
| |

## 13. ERABAKITZEKO ESKUBIDEA

Gure eredu popioa eta zor zaizkigun eskubideak bermatzeko, Euskal Herrian/ hemen/ euskal herritarrok ERABAKITZEKO ESKUBIDEA modu demokratikoan gauzatzea .